# HELDUEN HILETETAN

## I. Irakurgaiak itun zaharretik

Pazkoaldiaz kanpo baino nez dira erabiliko irakurgaiok.

### 1

*Jator eta prestu jokatu eban,*
*biztuera eban-eta gogoan.*

Makabearrak bigarren liburutik *2 M* 12, 43-46

EGUN hareetan, Judasek, Israelgo buruzagiak, gudarien artean zidarrezko bi mila txanpon batuta, Jerusalemera bialdu ebazan, pekatuen parkamenerako oparia eskeini egien. Jator eta prestu jokatu eban, biztuera eban-eta gogoan. Izan be, jausitako gudarien biztuera itxaron izan ez baleu, alperrekoa eta zentzunbakoa izango zan hildakoen alde otoitz egitea. Baina zintzo hiltzen diranek sari bikaina izango dabela uste eban-eta, asmo santua eta ederra izan zan ha. Horregaitik eskeini eban hilen aldeko parkamen--oparia, euren pekatuetatik libre geratu eitezan.

Jaunak esana.

### 2

*Nik badakit nire eskubidearen babeslea bizi dana.*

Job liburutik *Jb* 19, 1. 23-27a

JOBEK esan eban:
«Ai nire hitzak idatzita gelditukoa balira,
liburuan ezarrita!
Edota burdinazko eztenaz eta berunaz
betiko grabatuta hatxean!

Nik badakit nire eskubidearen babeslea bizi dana
eta, azkenean, hautsaren gainetik jagiko dala.
Nire narruazal hau hondatu ondoren,

gorputzik barik, Jainkoa ikusiko dot.
Nik neuk ikusiko dot, eta ez bestek».

Jaunak esana.

## 3

I. irakurgai hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Erre-opari lez onartu ebazan.*

Jakituria liburutik *Jkt* 3, 1-9

ZINTZOEN bizia Jainkoaren eskuetan dago,
ez ditu ezelako oinazek harrapatuko.
Zentzunbakoen begietan hilda egozan behin betiko,
hareek hemendik urtetea zoritxartzat jo eben
eta gugandik urruntzea guztizko hondamenditzat;
baina zintzoak bakean dagoz.
Gizakien eretxiz, zigorra jasan eben,
baina hareek hilezkor izateko itxaropenez beterik egozan.

Apur bat zigortuak izan ondoren,
sari handia jasoko dabe;
Jainkoak probatu egin ebazan
eta beretzat duin aurkitu.
Urrea arragoan lez garbitu ebazan
eta erre-opari lez onartu.
Kontuak emoteko egunean distiratsu agertuko dira,
lastotan arin zabaltzen dan txinparta lez izango.
Nazinoak gobernatuko dabez, herriak menperatuko,
eta Jauna izango dabe errege betiko.

Uste ona Jainkoagan dabenek ulertuko dabe egia,
haren maitasunari leial jakozenek iraungo dabe beragaz;
onginahia eta errukia dau-eta fededunentzat
eta ardura bere aukeratuentzat.

Jaunak esana.

I. irakurgaia era laburrean

*Erre-opari lez onartu ebazan.*

Jakituria liburutik *Jkt* 3, 1-6. 9

ZINTZOEN bizitza Jainkoaren eskuetan dago,
ez ditu ezelako oinazek harrapatuko.
Zentzunbakoen begietan hilda egozan behin betiko,
hareek hemendik urtetea zoritxartzat jo eben
eta gugandik urruntzea guztizko hondamenditzat;
baina zintzoak bakean dagoz.
Gizakien eretxiz, zigorra jasan eben,
baina hareek hilezkor izateko itxaropenez beterik egozan.

Apur bat zigortuak izan ondoren,
sari handia jasoko dabe;
Jainkoak probatu egin ebazan
eta beretzat duin aurkitu.
Urrea arragoan lez garbitu ebazan
eta erre-opari lez onartu.

Uste ona Jainkoagan dabenek ulertuko dabe egia,
haren maitasunari leial jakozenek iraungo dabe beragaz;
onginahia eta errukia dau-eta fededunentzat
eta ardura bere aukeratuentzat.

Jaunak esana.

**4**

*Bizitza akasbakoa da adin handia.*

Jakituria liburutik *Jkt* 4, 7-15

ZINTZOAK, gazterik hilda be, izango dau atsedenik.
Zahartzaro ohoragarria ez datza biziaren luzean,
ez da neurtzen urteen kopuruaz be.
Gizakiarentzat zuhurtasuna da benetako ule zuria,

eta bizitza akasbakoa da adin handia.
Jainkoari atsegin izan jakon zintzoa, eta harek maitatu eban; ➔
pekatarien artean bizi zan, eta Jainkoak eroan eban:
atara eban mundutik,
gaiztakeriak adimena kutsatu ez egion,
ezta engainuak arima liluratu be.
Izan be, txarraren lilurak ona amatatzen dau
eta grina txarren zorabioak adimen tolesbakoa desbideratzen.

Denpora laburrean heldua izatera heldu zan,
bizitza luzeari dagokion betetasuna lortu eban.
Jaunak haren arima atsegin izan ebanez,
bizkor atara dau txarraren erditik.
Jenteak ikusi eta ez dau ulertzen,
ez da honetaz konturatzen:
Jainkoak onginahia eta errukia dauala bere aukeratuentzat
eta arduratzen dala bere fededunez.

Jaunak esana.

## 5

*Betiko hondatuko dau Jaunak heriotza.*

Isaias Profetaren liburutik *Is* 25, 6a. 7-9

EGUN haretan, jai-jatordua emongo deutse
Jaun ahalguztidunak mendi honetan herri guztiei.
Mendi honetan kenduko dau
herri guztien gainean zabalduta dagoan estalkia,
nazino guztiak estaltzen dituan oihala.
Betiko hondatuko dau heriotza;
lehortuko ditu Jainko Jaunak aurpegi guztietako negar-malkoak
eta lur osotik aldenduko dau bere herriaren lotsakizuna,
Jaunak hitz egin dau-eta.

Eta egun haretan esango da:
«Hara gure Jainkoa!

Itxaroten genduan salbatuko ginduzala;
Jauna da: harengan genduan itxaropena.
Poztu gaitezan eta alaitu, salbatu gaitualako».

Jaunak esana.

## 6

*Ona da Jaunaren salbazinoa isilean itxarotea.*

Negar Kantak liburutik *Nk* 3, 17-26

URRUN joan jat bakea, ahaztu naz zorionaz.
Neure artean dinot: «Akabo nire etorkizuna,
Jaunak emoten eustan itxaropena».
Nire atsekabea eta zorigatxa gogoratzea
samina da eta pozoia niretzat.
Ezin dot burutik kendu,
eta jausia dot bihotza.

Baina zeozer dakart gogora, itxaropena bizkortzen deustana:
Jaunaren onginahia ez dala amaitu,
haren errukia ez dala agortu;
goizero barritzen da.
Bai handia, Jauna, zure leialtasuna!
Neure artean dinot: «Jauna da nire ondarea,
harengan dot itxaropena».

Ona da Jauna harengan uste on dabenentzat,
haren bila dabiltzanentzat.
Ona da Jaunaren salbazinoa isilean itxarotea.

Jaunak esana.

## 7

*Itzartu egingo da hilobietan lo dagoan asko.*

Daniel Profetaren liburutik *Dn* 12, 1-3

EGUN hareetan, ni, Daniel, atsekabeturik nengoan, eta honan berba egin eustan Jaunak: «Sasoi haretan, aingeruen buruzagia eta zure herriaren zaindaria dan

Mikael agertuko da. Larrialdi-sasoia izango da, herriak izaten hasi ziranetik bardinik bakoa. Baina aLDI haretan, salbatuko da zure herria, biziaren liburuan euren izena idatzita daukien guztiak, hain zuzen be.

Itzartu egingo da hilobietan lo dagoan asko: batzuk betiko bizitzarako, besteak betiko lotsarako. Jakintsuek ortziaren distiraz distiratuko dabe, eta besteei bide zuzenean ibiltzen irakatsi deutsienek izarrek lez betieran».

Jaunak esana.

## I. Irakurgaiak Itun Barritik Pazkoaldian

Pazkoaldian irakurgaiok erabiliko dira.

### 1

I. irakurgai hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Bera da Jainkoak bizien eta hilen epaile ipini dauana.*

Apostoluen Eginak liburutik *Eg* 10, 34-43

EGUN hareetan, honan berba egin eban Pedrok: «Orain jaubetzen naz benetan Jainkoak ez dauala bereizkeriarik egiten, ezpada ze, onartu egiten dauala begirune deutsona eta beraren nahia egiten dauana, edozein herritakoa dala be.

Harek bere hitza bialdu eutsen israeldarrei, guztien Jauna dan Jesu Kristoren bidez bakearen Barri Ona iragarriz. Badakizue zer jazo zan, Galileatik hasi eta Judea osoan, Joanek iragarri eban bateoaren ondoren: Nazareteko Jesusena, hain zuzen be: Jainkoak Espiritu Santuaren indarraz igurtzi eban, eta harek on egiten eta deabruak hartutako guztiak osatzen igaro eban bizitza, Jainkoa beragaz eban-eta.

Eta geu gara harek judeguen lurraldean eta Jerusalemen egindako guztien testigu. Jesus hau egur batetik dindilizka hil eben; baina Jainkoak biztu egin eban

hirugarren egunean eta agertzeko ahalmena emon eutson; ez, ostera, herri guztiari, Jainkoak aurrez testigutzat aukeratutakoei baino: geuri, hau da, ha hilen artetik biztu ondoren haregaz jan eta edan dogunoi.

Jesusek berak agindu euskun herriari predikatzeko eta autortzeko, bera dala Jainkoak bizien eta hilen epaile ipini dauana. Profeta guztiek autormen hau egiten dabe haretaz: harengan sinistu dagien guztiek pekatuen parkamena hartuko dabela, beraren izenean».

Jaunak esana.

I. irakurgaia era laburrean

*Bera da Jainkoak bizien eta hilen epaile ipini dauana.*

Apostoluen Eginak liburutik *Eg* 10, 34-36. 42-43

EGUN hareetan honan berba egin eban Pedrok: «Orain jaubetzen naz benetan Jainkoak ez dauala bereizkeriarik egiten, ezpada ze, onartu egiten dauala begirune deutsona eta beraren nahia egiten dauana, edozein herritakoa dala be.

Harek bere hitza bialdu eutsen israeldarrei, guztien Jauna dan Jesu Kristoren bidez bakearen Barri Ona iragarriz. Jesusek berak agindu euskun herriari predikatzeko eta autortzeko, bera dala Jainkoak bizien eta hilen epaile ipini dauana. Profeta guztiek autormen hau egiten dabe haretaz: harengan sinistu dagien guztiek pekatuen parkamena hartuko dabela, beraren izenean».

Jaunak esana.

## 2

*Zorionekoak aurrerantzean*
*Jaunagaz bat eginik hiltzen diranak.*

Apokalipsia liburutik *Ap* 14, 13

NIK, Joanek, ahotsa entzun neban zerutik esaten: «Idatzi egizu: "Zorionekoak aurrerantzean Jaunagaz bat eginik hiltzen diranak". Bai –dino Espirituak–, atseden hartuko dabe euren nekeetatik, lagun dabez-eta euren egintza onak».

Jaunak esana.

## 3

*Epaitu ebezan hildakoak,*
*nor bere egintzen arabera.*

Apokalipsia liburutik *Ap* 20, 11–21, 1

NIK, Joanek, tronu handi zuri bat ikusi neban, baita bertan jesarrita egoana be; beronen aurretik ihes egin eben lurrak eta zeruak, eta lorratzik itzi barik desagertu.

Eta hildakoak ikusi nebazan, handi nahiz txiki, tronuaren aurrean zutunik. Liburuak edegi ebezan; beste liburu bat be edegi eben, biziaren liburua. Eta liburuetan idatzita egoanaren arabera epaitu ebezan hildakoak, nor bere egintzen arabera.

Itsasoak beragan eukazan hildakoak bihurtu ebazan, eta bardin Herioak eta Hilen Egoitzak, eta nor bere egintzen arabera epaitu eben.

Orduan, Herioa eta Hilen Egoitza suzko lakura bota ebezan –suzko lakua bigarren heriotza da–. Izena biziaren liburuan idatzita ez ebenak be suzko lakura bota ebezan.

Nik, Joanek, zeru barria eta lur barria ikusi nebazan, desagertuak ziran-eta lehenengo zerua eta lehenengo lurra, eta itsasorik be ez zan.

Jaunak esana.

## 4

*Ez da gehiago heriotzarik izango.*

Apokalipsia liburutik *Ap* 21, 1-5a. 6b-7

NIK, Joanek, zeru barria eta lur barria ikusi nebazan, desagertuak ziran-eta lehenengo zerua eta lehenengo lurra, eta itsasorik be ez zan.

Uri santua ikusi neban, Jerusalem barria, zerutik Jainkoagandik jaisten, andragaia bere senarrarentzat lez apaindua. Eta ahots handia entzun neban tronutik esaten: «Hona Jainkoaren bizilekua gizakien artean; hareekin biziko da. Hareek izango ditu bere herri, eta Jainkoa bera izango dabe hareek beragaz.

Begietako malkoak lehortuko deutsez, eta ez da gehiago heriotzarik izango, ez dolurik, ez negarrik, ez nekerik, lehengo mundua desagertu da-eta».

Eta tronuan jesarrita egoanak esan eban: «Hara, gauza guztiak barri egiten ditut. Neu naz Alfa eta Omega, hasiera eta amaiera. Egarri danari Neuk emongo deutsat doan biziaren iturritik. Hori izango dau garaileak ondare, eta Jainko izango nau harek Ni, eta Nik bera seme».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoak

### 1

*Sal* 23 [22], 1-3. 4. 5. 6 (R/. 1; edo 4abc)

R/. **Ibar baltz ilunean banabil be,**
**ez naz gatxaren bildur,**
**Zu nigaz zagoz-eta**.

V/. Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean;
larre gurietan etzunarazoten nau,
ur-bazter nasaira eroaten
eta indarrak deustaz barritzen;
bide segurutik naroa,
bere izenari ohore eginez. R/.

V/. Ibar baltz ilunean banabil be,
ez naz gatxaren bildur,
Zu nigaz zagoz-eta;
zure artzain-makilak nasaitzen nau. R/.

V/. Mahaia atontzen deustazu
arerioen begi-bistan;
orioz igurzten deustazu burua,
gainezka dot edontzia. R/.

V/. Zoriona eta maitasuna ditut lagun,
bizitzako egun guztietan,
eta Jaunaren etxean biziko naz
amaibako egunetan. R/.

## 2

*Sal* 25 [24], 6 eta 7cd. 17-18. 20-21 (R/. 1; edo 3)

R/. **Jauna, Zugana jasotzen dot gogoa.**

**Edo:** **Ez daitezala lotsatu, Jauna, Zugan itxaroten dabenak.**

V/. Izan gogoan, Jauna, zeure errukia eta maitasuna,
betidanikoak dira-eta.
Gogoratu nitaz zeure maitasunean,
zeure ontasunari dagokionez, Jauna. R/.

V/. Nasaitu nire bihotz larritua,
atara nagizu estutasun honeetatik.
Ikusi nire atsekabea eta nekea,
eta parkatu nire pekatu guztiak. R/.

V/. Gorde nagizu bizirik eta libratu,
ez nadila lotsatu, Zugan babesteagaitik.
Prestutasunak eta zuzentasunak zainduko nabe,
Zugan dot-eta itxaroten. R/.

## 3

*Sal* 27 [26], 1. 4. 7 eta 8c-9a. 13-14 (R/. 1a; edota ik. 13)

R/. **Jaunaren ontasuna ikusi ustean nago**
**bizidunen lurrean.**

Edo: **Jaunagan hilak bai dohatsu;**
**haren aurrean zoriontsu!**

V/. Jauna dot argi eta salbazino,
nork ni bildurtu?
Jauna biziaren babes,
nork ni izutu? R/.

V/. Gauza bat eskatzen deutsat Jaunari,
horren bila nabil ni:
bizi nadila Jaunaren etxean
neure bizitzako egun guztietan,

Jaunaren edertasuna miretsiz
eta haren tenplua zainduz. R/.

V/. Entzun, Jauna, nire dei-hotsa,
erruki zakidaz eta erantzun.
Zure aurpegi bila nabil, Jauna,
ez ezkutatu niri zeure aurpegia. R/.

V/. Ziur dakit Jaunaren ontasuna gozatuko dodala
bizidunen lurrean.
Itxaron Jaunagan!
Eutsi gogor, izan bihotz!
Itxaron Jaunagan! R/.

## 4

*Sal* 42 [41], 2. 3. 5bc; *Sal* 43 [42], 3. 4. 5 (R/. *Sal* 42 [41], 3a)

R/. **Jainko biziaren egarri naz.**

V/. Basahuntza gogo biziz uretara bezala,
halantxe nire gogoa, ene Jainko, Zugana. R/.

V/. Jainkoaren egarri naz, Jainko biziaren egarri:
noiz helduko ete naz Jainkoaren aurpegia ikustera? R/.

V/. Gogoan dot, zelan joaten nintzan tenplura, Jainkoaren etxera,
poz-oihuz eta goraka, jai-giroan, jentetzagaz batera. R/.

V/. Bialdu zeure argia eta egia, gidatu nagiela,
eta eroan zure mendi santura, zure bizilekura. R/.

V/. Eta helduko naz Jainkoaren altarara,
neure poz betea dodan Jainkoagana.
Zitaraz goretsiko zaitut, Jainkoa, ene Jainkoa. R/.

V/. Zergaitik zagoz, ene barrua, lur jorik?
Zergaitik ezin egonik?
Itxaron Jainkoagan.
Goretsiko dot, barriz ere,
neure Salbatzailea eta Jainkoa. R/.

## 5

*Sal* 63 [62], 2. 3-4. 5-6. 8-9 (R/. ik. 2c)

R/. **Zure egarriz daukat gogoa,**
**Jauna, ene Jainkoa!**

V/. Jainko, Zu ene Jainko,
goizetik nabilkizu bila,
zure egarriz daukat gogoa, zure gogo biziz ni nazan guztia,
lur idor, agor, ur bakoa bezala. R/.

V/. Holan egon nahi dot santutegian Zuri begira,
zure indarra eta ospea ikusiz.
Bizia baino ederragoa da-eta zure maitasuna,
goratuko zaitue nire ezpanek. R/.

V/. Holan nahi zaitut bedeinkatu neure bizitzan,
eskuak jaso zure izenean.
Jakirik gozoenez lez naz asetuko,
eta nire ezpanek poz-oihuz zaitue goratuko. R/.

V/. Zeu izan zaitut-eta laguntzaile;
pozez egingo dot oihu zure egoen kerizpean.
Zuri lotuta nago osorik,
eta zure eskumak deust eusten. R/.

## 6

*Sal* 103 [102], 8 eta 10. 13-14. 15-16. 17-18 (R/. 8a)

R/. **Bihozbera eta errukiorra da Jauna.**

Edo: **Beti-betiko zoriona**
**gure hileri emon, Jauna.**

V/. Bihozbera eta errukiorra da Jauna,
hasarregatxa eta onginahiz betea.
Ez gaitu erabiltzen gure pekatuek merezi bezala,
ez deusku ordaintzen geure erruen arabera. R/.

V/. Zelan aita seme-alabentzat errukior,
halan Jauna begirune deutsoenentzat errukitsu;
ondo daki-eta zerez garan eginak,
gogoan dau hautsa garala gu. R/.

V/. Gizakia! Haren egunak bedarraren pareko,
zelaiko lorea lez da loratzen
eta, haizeak ikutu orduko, bat-batean galtzen,
egoan tokian lorratzik itzi barik. R/.

V/. Jaunaren maitasuna, barriz, betidanik betidaino
begirune deutsoenentzat,
haren salbazino-asmoak belaunez belaun dirau
haren ituna gordetzen dabenentzat,
legeak gogoan hartu eta betetzen dabezanentzat. R/.

## 7

*Sal* 116 [114], 5 eta 6; [115], 10-11. 15-16ac
(R/. ik. *Sal* 116 [114], 9)

R/. **Ibiliko naz Jaunaren aurrean,**
**bizidunen lurraldean.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Errukiorra eta zintzoa da Jauna,
errukitsua gure Jainkoa.
Jaunak zaintzen ditu apalak;
lur jota nengoan, eta salbatu nau. R/.

V/. Sendo nengoan fedean,
«Ni bai zoritxarreko» esatean be.
Hau esan neban neure larrialdian:
«Gizaki guztiak guzurti dira». R/.

V/. Mingarri jako Jaunari
bere fededunen heriotza.
Bai, zure zerbitzari naz, Jauna,
askatu dozuz nire kateak. R/.

## 8

*Sal* 122 [121], 1-2. 4-5. 6-7. 8-9 (R/. ik. 1; edota ik. 1b)

R/. **Zure etxera goaz, Jauna,**
**hauxe da poza daukaguna!**

Edo: **Goazen pozik Jaunaren etxera.**

V/. Ha poza nirea, esan eustenean:
«Goazen Jaunaren etxera!»
Hona orain nire oinak
zure ateetan, Jerusalem. R/.

V/. Hara igoten dabe leinuek, Jaunaren leinuek,
Israelen lege danez, Jaunaren izena gorestera.
Han dagoz ezarrita auzi-mahaiak,
Daviden jauregiko mahaiak. R/.

V/. Eskatu bakea Jerusalementzat,
bizi beitez nasai maite zaituenak.
Izan bedi bakea zure harresien barruan,
nasaitasuna zure jauregietan. R/.

V/. Neure senide eta lagunen izenean be,
hau dinot: «Bakea zugaz!»
Jaunaren, gure Jainkoaren, etxeagaitik,
zoriona eskatzen dot zuretzat. R/.

## 9

*Sal* 130 [129], 1-2. 3-4. 5-6b. 6c-8 (R/. 1; edota ik. 7bc)

R/. **Barru-barrutik dei egiten deutsut, Jauna.**

Edo: **Jaunagan dago errukia,**
**harengan askatasun ugaria.**

V/. Barru-barrutik dei egiten deutsut, Jauna;
entzun, Jauna, nire berbea!
Begoz zuhur zure belarriak
nire erregu-oihura. R/.

V/. Erruak kontuan badozuz, Jauna,
nork iraun zutunik, ene Jauna?
Baina Zuri parkamena dagokizu,
Zuganako begirunean bizi gaitezan. R/.

V/. Jaunaren zain nago, zain dago nire barrua,
haren hitza dot itxaroten;
nire barrua Jaunaren gogo biziz dago,
gauzaina egunsentiaren gurariz baino gehiago. R/.

V/. Gauzainak egunsentia lez,
itxaron begi Israelek Jaunagan,
Jaunarena da-eta maitasuna,
harena askapen betea.
Harek askatuko dau Israel
bere erru guztietatik. R/.

## 10

*Sal* 143 [142], 1-2. 5-6. 7ab eta 8ab. 10 (R/. 1a)

R/. **Entzun, Jauna, nire otoitza.**

V/. Entzun, Jauna, nire otoitza,
makurtu belarria nire erregura,
erantzun niri, zuzena zara eta leiala.
Ez hasi auzitan zeure zerbitzari honegaz,
ez da-eta bizidunik zure aurrean errubako danik. R/.

V/. Aspaldiko sasoiez gogoratzen naz,
zure egintza guztiak darabildaz buruan,
zure eskuek eginak ditut hausnartzen.
Zugana ditut eskuak luzatzen,
zure egarri naz, lur lehorra lez. R/.

V/. Erantzun laster, Jauna,
arnasarik barik nago-eta.
Emoidazu goizean zeure maitasunaren barri,
Zugan dot-eta konfiantza. R/.

V/. Erakutsi eidazu zure nahia egiten,
Zu zaitut-eta neure Jainkoa.
Zeure espiritu onberaz
gidatu nagizu toki zelaitik. R/.

# II. Irakurgaiak Itun Barritik

## 1

*Jainkoak Kristoren odolaz zintzotzat hartu gaituala,*
*salbatuko gaitu zigorretik beraren bitartez.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 5, 5-11

SENIDEOK: Itxaropenak ez dau huts egiten, Jainkoak bere maitasuna isuri deusku-eta bihotzera, emon deuskun Espiritu Santuaren bitartez. Oraindino pekatupean indar barik gengozala, Kristo, Jainkoak erabagitako sasoian, gaiztoen alde hil zan. Nekez onartuko leuke norbaitek pertsona zuzen baten alde hiltzea; halan be, pertsona on baten alde baleiteke norbait hiltzeko prest egotea.

Baina Kristo gu oraindino pekatari ginala hil zan gure alde: honan erakusten dau Jainkoak guri deuskun maitasuna.

Orain Jainkoak Kristoren odolaz zintzotzat hartu gaituala, zenbatez gehiago ez ete gaitu salbatuko zigorretik beraren bitartez!

Arerio ginala, Jainkoak beragaz adiskidetu bagindduzan bere Semearen heriotzari esker, zenbatez gehiago, behin adiskidetu ezkero, ez ete gaitu salbatuko haren biziari esker! Oraindino gehiago, harrotu be egiten gara Jainkoaz Jesu Kristo gure Jaunari esker, honen bitartez Jainkoagaz adiskidetzea lortu dogu-eta honezkero.

Jaunak esana.

## 2

*Pekatua ugaritu zanean,*

*ondino ugariago izan zan Jainkoaren onginahia.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 5, 17-21

SENIDEOK: Gizon bakarraren pekatuagaitik heriotza nagusitu bazan, zenbatez gehiago ez ete dira betiko bizian nagusi izango bakar batengaitik, Jesu Kristogaitik, salbazinoaren grazia eta dohai oparoa hartzen dabenak!

Beraz, baten pekatuak gizaki guztiei gatxespena ekarri eutsen lez, baten leialtasunak gizaki guztiei salbazinoa eta bizia ekarri deutse. Eta baten obedientzia ezagaitik guztiak pekatari izan ziran lez, baten obedientziagaitik guztiak zuzen izango dira.

Pekatua ugaritu zedin azaldu zan legea; baina pekatua ugaritu zanean, ondino ugariago izan zan Jainkoaren onginahia; izan be, pekatua, heriotza ekarriz, nagusi izan zan lez, Jainkoaren onginahia be, gizakia zuzentzat hartuz, nagusi izango da betiko bizia emonez, Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

Jaunak esana.

**3**

II. irakurgai hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Bizi barria bizi dagigun.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 6, 3-9

SENIDEOK: Bateoaz Kristo Jesusegaz bat egin dogunok, haren heriotzagaz egin dogu bat. Bateoaren bitartez haregaz heriotzan hobiratuak izan gara, Aitaren aintzaz Kristo hilen artetik biztu zan lez, guk be bizi barria bizi dagigun.

Izan be, harena lako heriotzan hari lotuak izan bagara,

halantxe izango gara harena lako biztueran be. Badakigu lehengo gure izaera Kristogaz kurutzeratua izan dala, pekatuzko gure izaera hori ezereztuta gelditu zedin, aurrerantzean pekatuaren esklabo izan ez geintezan. Izan be, norbait hiltzen danean, pekatutik aske gelditzen da.

Beraz, Kristogaz hil bagara, sinisten dogu, bizi be haregaz biziko garala. Badakigu Kristo, hilen artetik biztu zan ezkero, ez dana barriro hilko: heriotzak ez dau gehiago aginterik harengan.

Jaunak esana.

II. irakurgaia era laburrean

*Bizi barria bizi dagigun.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 6, 3-4. 8-9

SENIDEOK: Bateoaz Kristo Jesusegaz bat egin dogunok, haren heriotzagaz egin dogu bat. Bateoaren bitartez haregaz heriotzan hobiratuak izan gara, Aitaren aintzaz Kristo hilen artetik biztu zan lez, guk be bizi barria bizi dagigun.

Beraz, Kristogaz hil bagara, sinisten dogu, bizi be haregaz biziko garala. Badakigu Kristo, hilen artetik biztu zan ezkero, ez dana barriro hilko: heriotzak ez dau gehiago aginterik harengan.

Jaunak esana.

---

## 4

*Aieneka gagoz geure barruan, Jainkoak gu noiz askatuko.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 8, 14-23

SENIDEOK: Jainkoaren Espirituak gidatzen dituanak, horreetxek dira Jainkoaren seme-alaba. Zuek ez dozue hartu esklabo egiten zaituen espiritua, barriro be bildurrez bizitzera eroango zaituena; zuek seme-alaba egiten zaituen Espiritua hartu dozue, eta Espirituaren bidez «Abba!», hau da, «Aita!», dei egiten dozue.

Espiritu honek berak gure espirituagaz bat egiten dau Jainkoaren seme-alaba garala autortzeko; eta, seme-alaba bagara, baita oinordeko be, Jainkoaren oinordeko eta Kristoren oinordekide; izan be, nekeetan Kristoren kideko

bagara, aintzan be haren kideko izango gara-eta.

Nire eretxian, oraingo neke-lanak ezer gitxi dira gero gugan azalduko dan aintzaren aldean. Izadia bera be gogo biziz dago, zain-zain, Jainkoak noiz agertuko bere seme-alaba izatea zer dan. Izadiak bere benetako helburua galdu izan arren –ez bere gogoz, horretara behartu ebanagaitik baino–, badau itxaropena, esklabotzatik eta hondamenetik askatua izan eta Jainkoaren seme-alaben aintzazko askatasunean parte izateko.

Badakigu, jakin be, izadi osoa erdiminetan aieneka dagoana orain arte. Eta ha ez ezik, gu geu be bai: Espiritua lehen dohai lez hartu dogunok aieneka gagoz geure barruan, Jainkoak noiz askatuko eta bere seme-alaba noiz egingo gaituan zain.

Jaunak esana.

## 5

*Nork aldenduko gaitu Kristok deuskun maitasunetik?*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 8, 31b-35. 37-39

SENIDEOK: Jainkoa gure alde badogu, nor gure aurka? Bere Semea bera heriotzatik libratu ez ez ebanak, ezpada ze, gu guztion alde heriotzara emon baino egin ebanak, zelan ez deusku haregaz batera dana doarik emongo?

Nork salatuko ditu Jainkoak aukeratutakoak, Jainkoak berak zuzentzat onartu baditu? Nork kondenatuko ditu? Jesu Kristok?, hil zanak?, biztu be egin zanak?, Jainkoaren eskumaldean dagoan eta gure alde otoitzean dihardunak?

Nork aldenduko gaitu Kristok deuskun maitasunetik? Atsekabeak, larriak, erasoaldiak, goseak, jantzirik ezak, arriskuak, ezpatak?

Horreetan guztietan erraz urteten dogu garaile, maite izan gaituan hari esker. Ziur dakit: ez heriotzek eta ez bizik, ez aingeruk eta ez goiko beste indarrek, ez oraingok

eta ez gerokok, ez ezelako agintek, ez ortziko eta ez lur azpiko indarrek, ez beste ezelako izakik, ez gaituala aldenduko Jainkoak Jesu Kristo gure Jaunagan agertu deuskun maitasunetik.

Jaunak esana.

## 6

*Nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 14, 7-9. 10c-12

SENIDEOK: Gutariko inor ez da beretzat bizi, ezta beretzat hiltzen be. Bizi bagara, Jaunarentzat gara bizi, eta hiltzen bagara, Jaunarentzat gara hiltzen. Beraz, nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.

Honetarako hil eta biztu zan Kristo: hildakoen eta ➔ bizien Jauna izateko. Danok agertu beharko dogu Jainkoaren auzitegian, Liburu Santuak dinoan lez:

«Zin dagit neure biziagaitik –dino Jaunak–:
belaun guztiak makurtuko dira nire aurrean
eta mihin guztiek goratuko dabe Jainkoa».

Izan be, guztiok emon beharko deutsagu Jainkoari nork bere buruaren kontu.

Jaunak esana.

## 7

II. irakurgai hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Kristogaz daben alkartasunagaitik*
*guztiak bihurtuko dira bizira.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik

*1 Ko* 15, 20-24a. 25-28

SENIDEOK: Biztu da Kristo hilen artetik, heriotzatik biztuko diranetan lehen-frutu. Izan be, heriotza gizon baten bidez etorri zan lez, gizon baten bidez etorri da hildakoen biztuera be. Eta Adamegaz daben alkartasunagaitik gizaki guztiak hiltzen diran lez, Kristogaz daben alkartasunagaitik guztiak bihurtuko dira bizira. Baina bakotxa bere sasoian: lehenengo Kristo, lehen-frutua danez; gero, Kristorenak, hau barriro etortzean. Gero, azkena izango da, Kristok Jainko Aitari erreinua emongo deutsonean. Kristok errege izan behar dau-eta, Jainkoak arerio guztiak haren oinazpian ipini arte. Azkena ezereztuko dan arerioa heriotza izango da.

Izan be, «gauza guztiak haren menpean jarri ditu Jainkoak». Baina Liburu Santuak dana haren menpeko dala esatean, jakina, ez dau hor sartzen Jainkoa bera, gauza guztiak menpean jarri deutsozana. Jainkoak gauza guztiak menpean jarriko deutsozanean, Semea bera menpean jarriko jako gauza guztiak menpean jarri jakozanari, eta Jainkoa danetan dana izango da.

Jaunak esana.

II. irakurgaia era laburrean

*Kristogaz daben alkartasunagaitik*
*guztiak bihurtuko dira bizira.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik *1 Ko* 15, 20-23

SENIDEOK: Biztu da Kristo hilen artetik, heriotzatik biztuko diranetan lehen-frutu. Izan be, heriotza gizon baten bidez etorri zan lez, gizon baten bidez etorri da hildakoen biztuera be. Eta Adamegaz daben alkartasunagaitik gizaki guztiak hiltzen diran lez, Kristogaz daben alkartasunagaitik guztiak bihurtuko dira bizira. Baina bakotxa bere sasoian: lehenengo Kristo, lehen-frutua danez; gero, Kristorenak, hau barriro etortzean.

Jaunak esana.

## 8

*Behin betiko garaitua geratu da heriotza.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik *1 Ko* 15, 51-57

SENIDEOK: Misterio bat adierazoten deutsuet: ez gara danok hilko, baina izatez aldatuak izango gara danok unetxu baten, begien itxi-edegi baten, azkeneko turuta-hotsagaz batera. Izan be, joko dau turutak, eta hildakoak ustelezin biztuko dira, eta gu izatez aldatuak izango. Gure izate ustelkor honek bizi ustelezinez jantzi behar dau, eta gure izate hilkorrak hilezkortasunez.

Gure izate ustelkorra bizi ustelezinez jantziko danean, eta izate hilkorra hilezkortasunez, orduan beteko da Liburu Santuak dinoana: «Behin betiko garaitua izan da heriotza. Non dok, heriotza, heure garaipena? Non heure eztena?» Heriotza dakarren eztena pekatua da, eta

pekatuak legetik hartzen dau bere indarra. Eskerrak Jainkoari, garaipena emon deuskulako Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez!

Jaunak esana.

## 9

*Ikusten diranak behin-behinekoak dira;*
*ikusten ez diranak, barriz, behin betikoak.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik *2 Ko* 4, 14–5, 1

SENIDEOK: Badakigu, Jesus Jauna biztu dauanak biztuko gaituala gu be Jesusegaz, eta honen ondoan ipiniko gaituala zuekin batera. Hau guztia zuen onerako da, Jainkoaren dohaia askorengana zabaltzean, esker ona be askorengan ugaritu dadin, Jainkoaren aintzarako.

Horregaitik, ez dogu adorea galtzen. Gure gorputza hondatzen badoa be, barrutik indarbarritzen goaz egunetik egunera. Izan be, oraingo gure nekeek, une batekoak eta arinak izanik, betikoa dan aintza parebakoa prestatzen deuskue. Geure begiak ez doguz ipintzen ikusten diran gauzetan, ikusten ez diranetan baino; ikusten diranak behin-behinekoak dira-eta; ikusten ez diranak, barriz, behin betikoak.

Jakin badakigu, mundu honetan bizileku dogun oihal-txabola hau hondatzen bajaku be, badogula zeruan betiko bizilekua Jainkoak prestatua, ez giza eskuz egina.

Jaunak esana.

## 10

*Badogu zeruan betiko bizilekua.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik *2 Ko* 5, 1. 6-10

SENIDEOK: Jakin badakigu, mundu honetan bizileku dogun oihal-txabola hau hondatzen bajaku be, badogula zeruan betiko bizilekua Jainkoak prestatua, ez giza eskuz egina. Uste onez beteak gagoz beti, jakinik, gorputz honetan bizi garan bitartean, Jaunagandik erbesteratuak gagozala. Sinismenaren argiak gidatzen gaitu, eta ez ikusten dogunak. Uste onez gagoz, bai, baina

nahiago geunke gorputz honetatik erbesteratuak izan, Jaunagaz bizitzera joateko.

Edozelan be, gorputzean nahiz gorputzetik kanpo, Jaunari atsegingarri izaten ahalegintzen gara; guztiok Kristoren auzitegian agertu behar dogu-eta, nork bere ordaina hartzeko, gorputzean bizi zala egindako onaren ala txarraren arabera.

Jaunak esana.

## 11

*Kristok antzaldatuko dau gure gorputz ezerez hau eta bere gorputz aintzatsuaren irudiko egingo.*

San Paulo Apostoluak Filipoarrei egindako epistolatik *Flp* 3, 20-21

SENIDEOK: gu, zeruko uritar gara eta handik itxaroten dogu Salbatzailea, Jesu Kristo Jauna. Harek antzaldatuko dau gure gorputz ezerez hau, bere gorputz aintzatsuaren irudiko eginez, gauza guztiak bere menpe jartzeko dauan ahalmenari esker.

Jaunak esana.

## 12

*Jainkoak beragaz hartuko gaitu.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako lehenengo epistolatik *1 Ts* 4, 13-18

SENIDEOK: Ez dogu nahi hildakoen zoriaz zuek ezjakinean egoterik, atsekabetu ez zaitezen, itxaropenik ez dabenen antzera. Jesus hil eta biztu zala egiaz sinisten badogu, Jesusegaz bat eginik hil diranak be Jainkoak beragaz hartuko ditu.

Hau dinotsuegu Jaunaren hitzean oinarrituta: guk, Jauna etortzean bizirik izango garanok, ez deutsegu hil diranei aurrea hartuko. Izan be, goiaingeruaren oihuz eta Jainkoaren turuta-hotsez seinalea emonik, Jauna bera

jatsiko da-eta zerutik, eta lehenengo, Kristogaz bat eginik hildakoak biztuko dira; gero gu, ondino bizirik izango garanok, hareekin batera eroango gaitue hodeietan, airean, Jaunagaz alkartzera. Eta holan, beti Jaunagaz egongo gara. Adoretu egizue, beraz, alkar berba honeekin.

Jaunak esana.

## 13

*Haregaz hiltzen bagara,*
*haregaz biziko gara.*

San Paulo Apostoluak Timoteori egindako bigarren epistolatik *2 Tm* 2, 8-13

ANAIA maite: Izan gogoan Jesu Kristo, Daviden jatorritik sortua, hilen artetik biztua. Hau da nik irakasten dodan Barri Ona eta honengaitik nago neketan, gaizkile lez katez lotuta; baina Jainkoaren hitza ez dago katez lotuta. Horregaitik, dana jasaten dot Jainkoak aukeratu dituanen onerako, horreek be Kristo Jesusek emoten dauan salbazinoa eta betiko aintza lortu dagiezan.

Sinisgarria da adierazpen hau:

Haregaz hiltzen bagara,
beragaz biziko gara;
haregaz sufritzen badogu,
beragaz izango gara errege;
ha ukatzen badogu,
berak be ukatuko gaitu;
gu leialak ez bagara be,
harek leial dirau,
ezin leike-eta bere burua ukatu.

Jaunak esana.

## 14

*Dan lakoa ikusiko dogu Jainkoa.*

San Joan Apostoluaren lehenengo epistolatik *1 Jn* 3, 1-2

SEME-alaba maiteok: Begira zenbaterainoko maitasuna agertu deuskun Aitak, Jainkoaren seme-alaba izena daroagu-eta, baita izana be. Hona zergaitik munduak ez gaituan ezagutzen: Aita be ezagutu ez ebalako. Ene maiteok, orain Jainkoaren seme-alaba gara; gero izango garana oraindino ez da agertu. Badakigu, Kristo agertuko danean, haren antzeko izango garana, dan lakoa ikusiko dogu-eta.

Jaunak esana.

**15**

*Heriotzatik bizira aldatu gara*
*senideak maite doguzalako.*

San Joan Apostoluaren lehenengo epistolatik *1 Jn* 3, 14-16

S

EME-alaba maiteok: Guk badakigu heriotzatik bizira aldatu garana, eta hori, senideak maite doguzalako. Maite ez dauanak heriotzan jarraitzen dau. Bere senidea gorroto dauana giza hiltzaile da, eta badakizue giza hiltzaileak ez dauana beregan betiko bizia.

Honetan ezagutu dogu zer dan maitasuna: Kristok bere bizia gure alde emotean. Guk be geure bizia emon behar dogu senideen alde.

Jaunak esana.

# Aleluia eta Ebanjelio aurreko txatalak

## 1

Ik. *Mt* 11, 25

(R/. **Aleluia.**)

V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente apalari agertu deutsazulako. (R/.)

## 2

*Mt* 25, 34

(R/. **Aleluia.**)

V/. Zatoze, nire Aitaren bedeinkatuok;
hartu egizue munduaren sortzetik
zuentzat prestatuta dagoan erreinua. (R/.)

## 3

*Jn* 3, 16

(R/. **Aleluia.**)

V/. Hain maite izan eban Jainkoak mundua,
bere Seme bakarra emon eutson;
harengan sinisten dauanak betiko bizia dau. (R/.)

## 4

*Jn* 6, 39

(R/. **Aleluia.**)

V/. Hau da bialdu nauan Aitaren nahia:
berak emon deustazan guztietatik
ez dagidala bat be galdu,
ezpada ze, biztu dagidazala azken egunean, dino

Jaunak. (R/.)

## 5

*Jn* 6, 40

(R/. **Aleluia.**)

V/. Hauxe da nire Aitaren nahia:
Semeagan sinisten dauanak izan dagiala betiko bizia;
eta Neuk biztuko dot azken egunean, dino Jaunak. (R/.)

## 6

*Jn* 6, 51

(R/. **Aleluia.**)

V/. Neu naz zerutik jatsi dan ogi bizia, dino Jaunak;
ogi honetatik jaten dauana betiko biziko da. (R/.)

## 7

*Jn* 11, 25a. 26

(R/. **Aleluia.**)

V/. Neu naz biztuera eta bizia, dino Jaunak;
Nigan sinisten dauana ez da betiko hilko. (R/.)

## 8

*Flp* 3, 20

(R/. **Aleluia.**)

V/. Gu zeruko uritar gara
eta handik itxaroten dogu Salbatzailea,

## 9

*2 Tm* 2, 11-12a

(R/. **Aleluia.**)

V/. Kristogaz hiltzen bagara,
beragaz biziko gara;
haregaz sufritzen badogu,
beragaz izango gara errege. (R/.)

## 10

*Ap* 1, 5a. 6b

(R/. **Aleluia.**)

V/. Jesu Kristo da hilen arteko lehenengo biztua;
berari aintza eta agintea gizaldi eta gizaldietan. (R/.)

## 11

Ik. *Ap* 14, 13

(R/. **Aleluia.**)

V/. Zorionekoak aurrerantzean Jaunagaz bat eginik hiltzen diranak;
atseden hartuko dabe euren nekeetatik,
lagun dabez-eta euren egintza onak. (R/.)

# EBANJELIOAK

## 1

*Poztu zaiteze eta alaitu,*
*handia izango da-eta zuen saria zeruetan.*

 Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik *Mt* 5, 1-12a

ALDI haretan, jentetza ikusirik, Jesusek mendira igon eban. Jesarri eta ikasleak inguratu jakozan. Orduan, honan hasi jaken irakasten:



«Zorionekoak gogoz behartsu diranak,
ze eurena da Jainkoaren erreinua.
Zorionekoak negarrez dagozanak,
ze eurak ditu Jainkoak kontsolatuko.
Zorionekoak apalak,
ze eurek izango dabe agindutako lurra ondare.
Zorionekoak zuzentasunaren gose eta egarri diranak,
ze eurak ditu Jainkoak aseko.
Zorionekoak errukitsuak,
ze eurak ditu Jainkoak erruki izango.
Zorionekoak bihotz-garbi diranak,
ze eurek ikusiko dabe Jainkoa.
Zorionekoak bakegileak,
ze Jainkoaren seme-alaba izango dira.
Zorionekoak zuzentasunagaitik erasoa jasaten dabenak,
ze eurena dabe Jainkoaren erreinua.

Zorionekoak zuek, Nigaitik madarikatuko zaitueenean, erasoka eta guzurrez txarto-esaka erabiliko zaitueenean. Poztu zaiteze eta alaitu, ze handia izango da zuen saria zeruetan».

Jaunak esana.

**2**

*Zatoze Neugana...*
*eta Neuk arinduko zaituet.*

 Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik *Mt* 11, 25-30

BEHIN baten, Jesusek esan eban: «Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna, gauza honeek jakintsuei eta burutsuei gorde eta jente txikiari agertu deutsazuzalako. Bai, Aita, halan izan dozu gogoko. Nire Aitak dana emon deust, eta ez dau inork Semea ezagutzen, Aitak baino; ezta Aita be, Semeak baino, eta Semeak agertu gura deutsonak baino.

Zatoze Neugana nekatu eta lanpetu guztiok, eta Neuk arinduko zaituet. Hartu egizue nire buztarria eta ikasi Neugandik, ze gozoa eta bihotz-apala naz, eta aurkituko dozue zeuen arimentzako atsedena. Izan be, Nire buztarria leuna da, eta nire zama arina».

Jaunak esana.

## 3

*Badator senargaia; urten egiozue bidera!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik *Mt* 25, 1-13

ALDI haretan, Jesusek parabola hau esan eutsen ikasleei: «Zeruetako erreinuagaz, euren kriseiluak eskuetan hartu eta senargaiari bidera urten eutsoen hamar neskatilakaz lez gertatzen da. Neskatiletariko bost zentzunbakoak ziran eta bost zentzundunak. Kriseiluak hartzean, zentzunbakoek ez eben oriorik hartu; zentzundunek, ostera, kriseiluekin batera orioa be hartu eben ontzietan. Senargaiak luzatu egiten ebanez, loguratu egin ziran danak eta loak hartu zituan.

Gauerdian oihu bat entzun zan: “Badator senargaia; urten eiozue bidera!” Jagi ziran neskatila guztiak, eta euren kruseluak prestatu ebezan.

Orduan, zentzunbakoek esan eutsien zentzundunei: “Emoiguzue orio apur bat, kriseiluak amatatzera joakuzeta”. Zentzundunek erantzun eutsien: “Ea ez dogun nahikoa geuretzat eta zuentzat; hobe dozue, badaezpada, dendara joan eta erosi”.

Baina, erostera joanak zirala, senargaia heldu zan, eta prest ziranak ezteguetara sartu ziran harekin. Eta atea itxi eben.

Heldu ziran, azkenik, beste neskatilak be eta dei egin eben: “Jauna, Jauna, edegi!” Baina harek erantzun eutsen: “Benetan dinotsuet, ez dakit nor zarien”.

Egon, beraz, gertu, ze ez dakizue, ez eguna, ez ordua».

Jaunak esana.

**4**

*Zatoze, nire Aitaren bedeinkatuok.*

 Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik *Mt* 25, 31-46

ALDI haretan, Jesusek esan eban: «Gizonaren Semea –eta aingeru guztiak beragaz– aintzaz beterik etortzean, bere errege-aulki ospetsuan jesarriko da, eta herri guztiak haren aurrean batuko dabez. Harek batzuk besteakandik banandu egingo ditu, artzainak ardiak ahuntzengandik banatzen dituan lez: ardiak bere eskumaldean ipiniko ditu, eta ahuntzak ezkerraldean. ➔

Orduan, erregeak esango deutse eskoikoei: "Zatoze, nire Aitaren bedeinkatuok; hartu egizue munduaren sortzetik zuentzat prestaturik dagoan erreinua. Ze gose nintzan, eta jaten emon zeunsten; egarri, eta edaten emon; arrotz, eta etxean hartu ninduzuen; biluzik nengoan, eta jantzi egin ninduzuen; gaixorik, eta bisitatu; espetxean, eta ikustera etorri zinien".

Orduan, zintzoek erantzungo deutsoe: "Jauna, noiz ikusi zinduguzan goserik, eta emon geuntsun jaten, edota egarri, eta edaten emon? Noiz ikusi zinduguzan arrotz, eta etxean hartu, edota biluzik, eta jantzi? Noiz ikusi zinduguzan gaixorik edota espetxean, eta ikustera joan?"

Eta erregeak erantzungo deutse: "Bene-benetan dinotsuet: nire senide txikien honeetariko bati egin zeuntsoena neuri egin zeunsten".

Gero, esango deutse ezkerrekoei: "Alde nigandik, madarikatuok, deabruarentzat eta haren lagunentzat prestatuta dagoan betiko surtara. Ze gose nintzan, eta ez zeunsten jaten emon; egarri, eta ez zeunsten edaten emon; arrotz, eta ez ninduzuen etxean hartu; biluzik, eta ez ninduzuen jantzi; gaixorik eta espetxean nengoan, eta ez zinien ni ikustera etorri".

Hareek erantzungo deutsoe: "Jauna, noiz ikusi zinduguzan goserik edota egarriz, arrotz edota biluzik,

gaixorik edotaespetxean, eta guk lagundu ez?”

Harek erantzungo deutse: “Benetan dinotsuet: txikien honeetariko bati egin ez zeuntsoena, neuri ez zeunsten egin”.

Eta honeek betiko zigorretara joango dira; zintzoak, barriz, betiko bizitzara».

Jaunak esana.

## 5

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Jesusek, deadar handia eginez,*
*azken arnasa emon eban.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik *Mk* 15, 33-39; 16, 1-6

EGUERDIAN, ilundu egin eban lurbira osoan hirurak arte. Hiruretan, Jesusek oihu handiz esan eban: «Eloi, Eloi, lema sabaktani», hau da, «Ene Jainko, ene Jainko, zergaitik itzi nozu?» Hau entzutean, han egozan batzuek esan eben: «Eliasi deika jabilk».

Orduan batek, lasterka joan, belakia ozpinetan busti eta, kainabera bati ertzean ipiniz, edatera emon eutson, esanez: «Egon, ea datorkion Elias, kurutzetik jaistera».

Baina Jesusek, deadar handia eginez, azken arnasa emon eban.

Orduan, santutegiko oihala erdi-erditik urratu zan, goitik beheraino. Aurrean egoan erromatar ehuntariak, zelan hil zan ikustean, esan eban: «Benetan, Jainkoaren Semea zan gizon hau».

Zapatua igaro zanean, Maria Magdalenak eta Santiagoren ama Mariak eta Salomek usain gozoko ukenduak erosi zituen Jesusen gorpua baltsamatzeko. Eta asteko lehen-egunean, goizean goiz, eguzkiak urten orduko, hilobira joan ziran.

Hauxe inotsien alkarri: «Nork irauliko deusku hilobi-sarrerako harria?» Begiratu eta harria iraulita ikusi eben, oso handia zan arren. Hilobian sarturik, gazte bat ikusi

eben eskumaldean jesarrita, soineko zuriz jantzia, eta ikaratu-ikaratu egin ziran. Harek esan eutsen: «Ez bildurtu! Nazareteko Jesus kurutzean josiaren bila ete zabiltze. Biztu egin da; ez dago hemen. Begira hemen ipini eben lekua.

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik *Mk* 15, 33-39

EGUERDIAN, ilundu egin eban lurbira osoan hirurak arte. Hiruretan, Jesusek oihu handiz esan eban: «Eloi, Eloi, lema sabaktani», hau da, «Ene Jainko, ene Jainko, zergaitik itzi nozu?» Hau entzutean, han egozan batzuek esan eben: «Eliasi deika jabilk».

Orduan batek, lasterka joan, belakia ozpinetan busti eta, kainabera bati ertzean ipiniz, edatera emon eutson, esanez: «Egon, ea datorkion Elias, kurutzetik jaistera». Baina Jesusek, deadar handia eginez, azken arnasa emon eban.

Orduan, santutegiko oihala erdi-erditik urratu zan, goitik beheraino. Aurrean egoan erromatar ehuntariak, zelan hil zan ikustean, esan eban: «Benetan, Jainkoaren Semea zan gizon hau».

Jaunak esana.

---

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik *Lk* 7, 11-17

ALDI haretan, Nain izeneko herrira joan zan Jesus, bere ikasleak eta jente asko lagun zituala. Herriko sarrerara hurreratu zanean, hildako bat, ama alargun baten seme bakarra, eroien lur emotera. Herriko jente asko joian amagaz.

Hau ikustean, errukitu egin jakon Jauna eta esan eutson: «Ez egin negarrik!» Hurreraturik, hilkutxa ikutu eban, eta eroienak gelditu egin ziran. Orduan, esan eban: «Gazte, zeuri dinotsut: jagi!» Jagi zan hildakoa eta berbetan hasi, eta Jesusek amari emon eutson.

Bildurrak hartu zituan danak eta Jainkoa goresten eben, esanez: «Profeta handia sortu da gure artean». Eta beste hau be bainoen: «Bere herria salbatzera etorri da Jainkoa». Judean eta inguruko lurralde guztian zabaldu zan gertaera honen barria.

Jaunak esana.

## 7

*Egon prest zuek be.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik *Lk* 12, 35-40

ALDI haretan, esan eutsen Jesusek bere ikasleei: Zagoze prest, jantziak lotuta eta kriseiluak biztuta; izan zaiteze nagusia ezteguetatik noiz bihurtuko zain dagozan morroiak bezalakoak, heldu eta atea jo baizen laster edegitzeko prest dagozan morroien modukoak.

Zorionekoak morroi horreek, nagusiak, heltzean, itxaroten aurkitzen baditu! Egia dinotsuet: erropak aldaturik, mahaian jesarriazoko ditu eta zerbitzen hasiko jake. Eta gauerdian nahiz goizaldean badator eta holan aurkitzen baditu, zorionekoak hareek!

Hartu gogoan hau: etxeko nagusiak, lapurra zein ordutan etorriko dan jakingo baleu, ez leuke etxea zulatzen

itziko. Egon prest zeuok be ze, gitxien uste dozuen orduan etorriko da Gizonaren Semea».

Jaunak esana.

## **8**

*Gaur Nigaz izango zara paradisuan.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik *Lk* 23, 33. 39-43

«GUDARIAK «buru-hazur» eritxon lekura heldu ziranean, bertan josi eben kurutzean Jesus, baita gaizkile biak be, bata Jesusen eskumaldean eta bestea ezkerrean. Kurutzetik dindilizka egozan gaizkileetariko bat Jesusi iraínka ebilkon: «Hi ez haz, ba, Mesias? Salbatu egik heure burua eta salbatu gagizak geu be!»

Baina besteak agiraka egin eutson, esanez: «Zigorra jasoten hagoala be ez deutsak bildurrik Jainkoari ala? Gurea legezkoa dok, ze, geure eginakaitik merezia joaguk; baina honek ez jok ezelako okerrik egin».

Gero, esan eban: «Jesus, gogoratu zaitez nitaz, zeure erreinura heltzean».

Jesusek erantzun eutson: «Benetan dinotsut: gaur Neugaz izango zara paradisuan».

Jaunak esana.

## **9**

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Aita, zeure eskuetan izten dot neure espiritua!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik *Lk* 23, 44-46. 50. 52-53; 24, 1-6a

EGUERDI aldea zan, eta ilundu egin eban lurbira osoan hirurak arte. Eguzkia ezkutatu egin zan eta santutegiko oihala erdi-erditik urratu zan. Jesusek deadar handiz esan eban: «Aita, zeure eskuetan izten dot

neure espiritua!» Eta hori esanda, azken arnasa emon eban.

Orduan, Zaharren kontseiluko kide bat etorri zan, Jose eritxona, gizon on eta zintzoa. Pilatogana aurkeztu eta Jesusen gorpua eskatu eutson. Jesus kurutzetik jatsirik, izara baten batu eban eta hatxean zulatutako eta oraindik beste inor lurperatu bako hilobian ezarri.

Astearen lehenengo-egunean, goizean goiz, hilobira joan ziran emakumeak, prestaturik zituen usain gozoko ukenduak eroanez. Hilobi-sarrerako harria iraulita aurkitu eben. Sartu ziran, baina ez eben Jesus Jaunaren gorpua aurkitu. ➔

Zer pentsatu ez ekiela egozan; horretan, gizaseme bi agertu jakezan jantzi distiratsuz. Emakumeak ikaraz eta burumakur egozala, gizaseme hareek esan eutsien: «Zer darabilzue hilen artean, bizi danaren bila? Ez dago hemen; biztu egin da.

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean:

*Aita, zeure eskuetan izten dot neure espiritua!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik *Lk* 23, 44-46. 50. 52-53

EGUERDI aldea zan, eta ilundu egin eban lurbira osoan hirurak arte. Eguzkia ezkutatu egin zan eta santutegiko oihala erdi-erditik urratu zan. Jesusek deadar handiz esan eban: «Aita, zeure eskuetan izten dot neure espiritua!» Eta hori esanda, azken arnasa emon eban.

Orduan, Zaharren kontseiluko kide bat etorri zan, Jose eritxona, gizon on eta zintzoa. Pilatogana aurkeztu eta Jesusen gorpua eskatu eutson. Jesus kurutzetik jatsirik, izara baten batu eban eta hatxean zulatutako eta oraindik beste inor lurperatu bako hilobian ezarri.

Jaunak esana.

---

## **10**

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Ez eban, ba, Mesiasek hori guztia sufridu behar,*
*bere aintzan sartzeko?*

 Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik *Lk* 24, 13-35

EGUN haretan bertan, astearen lehenengo egunean, Jesusesn ikasle bi Emaus izeneko herritxura joiazan, Jerusalemdik hamaika kilometrora. Jerusalemen gertatutako guztiez berbetan ziharduen alkarregaz. Eta, berbaz eta eztabaidan ziharduela, Jesus berbera inguratu jaken eta eurekaz joian; hareen begiak, ostera, itsurik egozan eta ez eben ezagutu.

Jesusek esan eutsen: «Zertaz diharduzue berbetan bidean alkarrekin?» Hareek gelditu egin ziran, aurpegia ilun, eta bietariko batek, Kleofas eritxonak, erantzun eutson: «Zeu izango zara Jerusalemen egunotan gertatu dana jakin ez dauan kanpotar bakarra!» Jesusek itaundu eutsen: «Zer gertatu da, ba?»

Hareek erantzun eutsoen: «Nazareteko Jesusi gertatua; profeta ahaltsua zan egitez eta berbaz Jainkoaren eta herri guztiaren aurrean; baina gure abadeburuek eta agintariek heriotzara kondenatu dabe eta kurutzean josi. Guk uste genduan harek askatuko ebala Israel; baina badira hiru egun hori gertatu dala. Egia da gure arteko emakume batzuek harrituta itzi gaituela; goizean goiz joan dira hilobira eta ez ei dabe gorpua aurkitu; gainera, Jesus bizi dala esan deutsien aingeruak agertu jakezala esanez etorri jakuz. Gutar batzuk be izan dira hilobian, eta emakumeek esan bezala aurkitu dabe; baina bera ez dabe ikusi».

Orduan, Jesusek esan eutsen: «Bai zentzunbakoak zariela, bai motelak profetek esana sinisteko! Ez ete eban,

bada, Mesiasek hori guztia sufridu behar, bere aintzan sartzeko?» Eta, Moisesengandik hasi eta profetaz profeta, Liburu Santuek beraren gainean inoen guztia azaldu eutsen.

Joiazan herritxura hurreratu ziranean, Jesusek aurrera jarraitzeko keinua egin eban. Baina hareek mesedez eta faborez eskatu eutsoen: «Gelditu zaitez geugaz, ze, berandu da eta iluna gainean dogu». Eta herrian sartu zan hareekin gelditzeko.

Hareekin mahaian egoala, Jesusek, ogia harturik, bedeinkapen-otoitza esan, zatitu eta emon eutsen. Orduan, begiak zabaldu jakezan eta ezagutu eben; baina Jesus desagertu egin jaken.

Hareek alkarri esan eutsoen: «Ez ete genduan bihotza sutan, bidean berba egiten euskunean eta Liburu Santuak azaltzen euskuzanean?» Eta behingoan jagi eta Jerusalemera bihurtu ziran. Han Hamaikak eta honeen lagunak baturik aurkitu zituen, hauxe inoela: «Biztu da benetan Jauna eta Simoni agertu jako».

Ikasle biek bidean gertatua kontatu eutsien eta zelan ezagutu eben ogia zatitzean.

Jaunak esana.

Ebanjelioa era laburrean:

*Ez eban, ba, Mesiasek hori guztia sufridu behar,*
*bere aintzan sartzeko?*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik *Lk* 24, 13-16. 28-35

EGUN haretan bertan, astearen lehenengo egunean, Jesusen ikasle bi Emaus izeneko herritxura joiazan, Jerusalemdik hamaika kilometrora. Jerusalemen gertatutako guztiez berbetan ziharduen alkarregaz. Eta, berbaz eta eztabaidan ziharduela, Jesus berbera inguratu jaken eta eurekaz joian; hareen begiak, ostera, itsurik egozan eta ez eben ezagutu.

Joiazan herritxura hurreratu ziranean, Jesusek aurrera jarraitzeko keinua egin eban. Baina hareek mesedez eta faborez eskatu eutsoen: «Gelditu zaitez geugaz, ze, berandu da eta iluna gainean dogu». Eta herrian sartu zan hareekin gelditzeko.

Hareekin mahaian egoala, Jesusek, ogia harturik, bedeinkapen-otoitza esan, zatitu eta emon eutsen. Orduan, begiak zabaldu jakezan eta ezagutu eben; baina Jesus desagertu egin jaken.

Hareek alkarri esan eutsoen: «Ez ete genduan bihotza sutan, bidean berba egiten euskunean eta Liburu Santuak azaltzen euskuzanean?» Eta behingoan jagi eta Jerusalemera bihurtu ziran. Han Hamaikak eta honeen lagunak baturik aurkitu zituen, hauxe inoela: «Biztu da benetan Jauna eta Simoni agertu jako».

Ikasle biek bidean gertatua kontatu eutsien eta zelan ezagutu eben ogia zatitzean.

Jaunak esana.

## **11**

*Nire hitza entzun eta sinisten dauana*
*heriotzatik bizira igaro da honezkero.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 5, 24-29

ALDI haretan, esan eutsen Jesusek judeguei: Bene-benetan dinotsuet: Nire berbea entzun eta bialdu nauanagan sinisten dauanak, betiko bizitza dauka; ez da kondenatua izango, ze, heriotzatik bizitzara igaroa da daborduko.

Bene-benetan dinotsuet: Badator ordua, hobeto esan, helduta dago, hildakoek Jainkoaren Semearen ahotsa entzungo dabena, eta entzuten dabenak biziko dira. Aitak bizitza beragan daukan bezala, Semeari be bizitza beragan izatea emon deutso. Gainera, epaitzeko ahalmena emon deutso, Gizonaren Semea dalako. Ez harritu dinotsuedanaz; ze, badator ordua, hildako guztiek beraren ahotsa entzungo dabena, eta hilobietatik urtengo dabena: ona egin ebenak betiko bizitzarako biztuko dira; txarra egin ebenak, ostera, kondenatuak izateko.

Jaunak esana.

## 12

*Semeagan sinisten dauanak betiko bizia dau,*
*eta Neuk biztuko dot azken egunean.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 6, 37-40

ALDI, haretan esan eutson Jesusek jenteari: Aitak Niri emoten deustan guztia Neugana etorriko da, eta Nigana etortzen danik ez dot kanpora botako, ze, ez naz zerutik jatsi neure nahia egitera, bialdu nauanaren nahia baino.

Eta hauxe da bialdu nauanaren nahia: berak emon deustan guztitik, ez dagidala ezer be galdu, ezpada ze, biztu dagidala azken egunean. Hauxe da nire Aitaren nahia: Semea ikusi eta harengan sinisten dauanak izan dagiala betiko bizitza; eta Neuk biztuko dot azken egunean».

Jaunak esana.

## 13

*Ogi honetatik jaten dauana betiko biziko da,*
*eta Neuk biztuko dot azken egunean.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 6, 51-58

ALDI haretan, esan eutson Jesusek jenteari: Neu naz zerutik jatsia dan ogi bizia; ogi honetatik jaten dauana betiko biziko da. Eta Nik emongo dodan ogia neure haragia da, mundua bizi dadin emona». Judeguek eztabaidan zihardUen euren artean: «Zelan emon ahal deusku honek bere haragia jaten?» ➔

Jesusek esan eutsen: «Bene-benetan dinotsuet: Gizonaren Semearen haragia jaten eta haren odola edaten ez badozue, ez dozue bizirik izango zeuongan. Nire haragia jaten eta nire odola edaten dauanak betiko bizitza dauka, eta Neuk biztuko dot hori azken egunean. Izan be, nire haragia benetako janaria da eta nire odola benetako edaria. Nire haragia jaten eta nire odola edaten dauana Neugan dago eta Ni harengan.

Bizia dan Aitak bialdu nau eta Ni Aitari esker bizi naz; era berean, Ni jaten nauana Neuri esker biziko da. Hauxe da zerutik jatsi dan ogia; ez da zuen gurasoek jan ebena lakoa, ze, hareek hil egin ziran. Ogi honetatik jaten dauana betiko biziko da».

Jaunak esana.

## 14

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Neu naz biztuera eta bizia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 11, 17-27

ALDI haretan, Jesus heldu zanean, Lazarok baeroiazan jadanik lau egun hilobian. Betania hur dago Jerusalemdik, hiru kilometro ingurura. Eta judegu asko etorri zan Marta eta Mariagana, nebeagaitik doluminak emotera.

Martak, Jesus etorrela entzun ebaneko, bidera urten eutson; Maria, barriz, etxean gelditu zan. Martak esan eutson Jesusi: «Jauna, hemen izan bazina, gure nebea ez zan hilko. Halan be, badakit eskatuko deutsazun guztia emongo deutsula Jainkoak».

Jesusek erantzun eutson: «Biztuko da zure nebea». Eta Martak: «Badakit biztuko dana azken egunean, hildakoak biztueran».

Jesusek esan eutson orduan: «Neu naz biztuera eta bizia; Nigan sinisten dauana, hilda be, biziko da, eta bizi dana, Nigan sinisten badau, ez da betiko hilko. Sinisten dozu hori?» Martak erantzun eutson: «Bai, Jauna, sinisten dot Zu Mesias zarala, Jainkoaren Semea, mundura etortzekoa zana».

Jaunak esana.

Ebanjelioa era laburrean:

*Neu naz biztuera eta bizia.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 11, 21-27

ALDI haretan, Martak esan eutson Jesusi: «Jauna, hemen izan bazina, gure nebea ez zan hilko. Halan be, badakit eskatuko deutsazun guztia emongo deutsula Jainkoak».

Jesusek erantzun eutson: «Biztuko da zure nebea». Eta Martak: «Badakit biztuko dana azken egunean, hildakoak biztueran».

Jesusek esan eutson orduan: «Neu naz biztuera eta bizia; Nigan sinisten dauana, hilda be, biziko da, eta bizi dana, Nigan sinisten badau, ez da betiko hilko. Sinisten dozu hori?» Martak erantzun eutson: «Bai, Jauna, sinisten dot Zu Mesias zarala, Jainkoaren Semea, mundura etortzekoa zana».

Jaunak esana.

## 15

*Lazaro, erdu kanpora!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 11, 32-45

ALDI haretan, Lazaroren arreba Mariak, Jesus egoan lekura heltzean, ikusi ebanerako, oinetara ahuspez jausi eta esan eutson: «Jauna, hemen izan bazina, gure nebea ez zan hilko».

Maria eta Mariagaz etorritako judeguak negarrez ikusirik, barruak dar-dar egin eutson Jesusi eta, guztiz bihozminduta, itaundu eban: «Non ipini dozue?» Erantzun eutsoen: «Jauna, zatoz eta ikusi». Jesusek negarrari emon eutson.

Han egozan judeguek esan eben: «Begira zelako

maitasuna eutson!» Baina hareetariko batzuek esan eben: «Itsuari begiak zabaldu eutsozan honek, ez ete eikean hau hiltzea galazo?»

Jesus, ostera be bihozminduta, hilobira hurreratu zan. Hatx-zuloa zan, harri-losaz estaldua. Jesusek esan eban: «Kendu harri-losa!»

Hildakoaren arreba Martak esan eutson: «Jauna, hatsa botako dau, lau egun badaroaz-eta». Jesusek erantzun eutson: «Ez deutsut esan, ba, sinisten badozu Jainkoaren aintza ikusiko dozula?» ➔

Kendu eben, bada, harria. Jesusek, begiak zerurantz jasorik, esan eban: «Aita, eskerrak Zuri, entzun deustazulako. Nik badakit beti entzuten deustazuna; baina inguruan dodan jenteagaitik dinot, Zeuk bialdu nozula sinistu dagien».

Hau esanda, oihu egin eban indartsu: «Lazaro, erdu kanpora!» Eta hildakoak urten egin eban. Esku-oinak oihal-zerrendaz lotuta eta aurpegia zapiz estalduta zituan. Jesusek esan eutsen: «Askatu egizue eta itzi joaten».

Maria ikustera joandako judegu askok, Jesusek Lazarorekin egina ikustean, beragan sinistu eban.

Jaunak esana.

## 16

*Galgaraua hiltzen bada, frutu asko emoten dau.*

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

 Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 12, 23-28

ALDI haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Heldu da Gizonaren Semearen aintza azalduko dan ordua. Bene-benetan dinotsuet: Galgaraua, lurrean jausi eta hiltzen ez bada, bera bakarrik gelditzen da; baina, hiltzen bada, frutu asko emoten dau. Bere bizia maite

dauanak galdu egingo dau; baina mundu honetan bere bizia gauza gitxitzat hartzen dauanak betiko bizitzarako gordeko dau. Nire zerbitzari izan gura dauanak, jarraitu beist eta, Ni nagoan lekuan, han izango da nire zerbitzaria be. Nire zerbitzari dana ohoratu egingo dau Aitak.

Larri dot orain neure barrua, baina zer esan? Ordu honetatik ataratzeko eskatuko ete deutsat Aitari? Baina honexetarako etorria naz, hatan be, ordu honetarako! Aita, agertu egizu zeure izenaren aintza!»

Orduan, ahots bat entzun zan zerutik: «Agertu dot, eta barriz be agertuko dot».

Jaunak esana.

Ebanjelioa era laburrean:

*Galgaraua hiltzen bada, frutu asko emoten dau.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 12, 23-26

ALDI haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Heldu da Gizonaren Semearen aintza azalduko dan ordua. Bene-benetan dinotsuet: Galgaraua, lurrean jausi eta hiltzen ez bada, bera bakarrik gelditzen da; baina, hiltzen bada, frutu asko emoten dau. Bere bizia maite dauanak galdu egingo dau; baina mundu honetan bere bizia gauza gitxitzat hartzen dauanak betiko bizitzarako gordeko dau. Nire zerbitzari izan gura dauanak, jarraitu beist eta, Ni nagoan lekuan, han izango da nire zerbitzaria be. Nire zerbitzari dana ohoratu egingo dau Aitak.

Jaunak esana.

## 17

*Nire Aitarenean bizileku asko dago.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 14, 1-6

ALDI haretan, esan eutsen Jesusek bere ikasleei: «Ez izan kezkarik; sinistu Jainkoagan eta sinistu Neugan be. Nire Aitarenean bizileku asko dago; holan izan ez balitz, esango neuskizuen. Orain zuentzat lekua prestatzera noa. Joan eta lekua prestatu ostean, barriro etorri eta Neurekin eroango zaituet, Ni nagoan lekuan zuek be egon zaitezen. Zuek badakizue Ni noan lekurako bidea».

Tomasek esan eutson: «Jauna, ez dakigu nora zoazen, eta zelan jakin bidea?» Jesusek erantzun: «Neu naz bidea, egia eta bizia. Ezin da inor Aitagana joan, nire bidez izan ezik».

## 18

*Aita, Zuk emon deustazuzanak*
*Ni nagoan lekuan Nigaz egotea nahi dot.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 17, 24-26

ALDI haretan, Jesusek begiak zerura jaso eta honan egin eban otoitz: Aita, Zuk emon deustazuzanak Ni nagoan lekuan Neugaz egotea gura dot, nire aintza, mundua izan baino lehen maite izan nozulako, emon deustazun aintza ikusi dagien.

Aita zuzen hori, munduak ez zaitu ezagutu; Nik, ostera, ezagutu zaitut, eta honeek jakin dabe Zuk bialdu nozuna. Jakin eragin deutset zure izena, eta aurrerantzean be jakin eragingo deutset, Zuk Niri deustazun maitasuna eurongan izan daiten, eta Neu be eurongan izan naiten».

Jaunak esana.

## 19

*Burua makurtuz,*
*azken arnasa emon eban.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 19, 17-18. 25-30

ALDI haretan, Jesusek, kurutzea sorbaldan eroiala, «Buruhazur» –hebreeraz «Golgota»– eritxon lekurantz urten eban. Han josi eben kurutzean, eta beragaz batera beste bi, alde banatan, eta erdian Jesus.

Jesusen kurutzearen ondoan egozan haren ama, amaren ahizta, Maria Kleofasen emaztea eta Maria Magdalena. Jesusek, bere ama eta, beronen ondoan, maite eban ikaslea ikusirik, esan eutson amari: «Emakume, horra hor zure semea!» Gero, ikasleari esan eutson: «Horra hor zure ama!» Eta harrezkero ikasleak bere etxean hartu eban.

Ondoren, Jesusek, dana betea zala jakinik, Liburu Santuak esana guztiz bete zedin, esan eban: «Egarri naz!» Bazan han ozpinez betetako pitxar bat. Orduan, belakia

ozpinetan busti eta, kainaberari ertzean erantsiz, ahora hurreratu eutsoen. Ozpina hartu ebanean, Jesusek esan eban: «Bete da dana!»

Eta, burua makurtuz, azken arnasa emon eban.

Jaunak esana.

=>

# UMETXUEN HILETETAN

## A. Bateatutako umetxuaren hiletetan

### I. Irakurgaiak Itun Zaharretik

Irakurgaiok pazkoaldiaz kanpo baino ez dira erabiliko.

**1**

*Betiko hondatuko dau Jaunak heriotza.*

Isaias Profetaren liburutik *Is* 25, 6a. 7-9

EGUN haretan, jai-jatordua emongo deutse
Jaun ahalguztidunak mendi honetan herri guztiei.
Mendi honetan kenduko dau
herri guztien gainean zabalduta dagoan estalkia,
nazino guztiak estaltzen dituan oihala.
Betiko hondatuko dau heriotza;
lehortuko ditu Jainko Jaunak aurpegi guztietako negar-malkoak
eta lur osotik aldenduko dau bere herriaren lotsakizuna,
Jaunak hitz egin dau-eta.

Eta egun haretan esango da:
«Hara gure Jainkoa!
Itxaroten genduan salbatuko ginduzala;
Jauna da: harengan genduan itxaropena.
Poztu gaitezan eta alaitu, salbatu gaitualako».

Jaunak esana.

**2**

*Ona da Jaunaren salbazinoa isilean itxarotea.*

Negar Kantak liburutik *Nk* 3, 22-26

JAUNAREN onginahia ez da amaitu,
haren errukia ez da agortu;

Bai handia, Jauna, zure leialtasuna!
Neure artean dinot: «Jauna da nire ondarea,
harengan dot itxaropena».

Ona da Jauna harengan uste on dabenentzat,
haren bila dabiltzanentzat.
Ona da Jaunaren salbazinoa isilean itxarotea.

Jaunak esana.

## I. Irakurgaiak Itun Barritik Pazkoaldian

Pazkoaldian irakurgai honeexek erabiliko dira

### 1

*Jainkoak begietako malko guztiak lehortuko deutsez.*

Apokalipsia liburutik *Ap* 7, 9-10. 15-17

NIK, Joanek, gizatalde handi bat ikusi neban, inork ezin konta ahalakoa, nazino eta arraza, herri eta hizkuntza guztietako jentez osatuta, tronuaren eta Bildotsaren aurrean zutunik, soineko zuriz jantzita eta palma-adarrak eskuetan. Eta ahots handiz egiten eben deadar:

«Tronuan jesarrita dagoan gure Jainkoari
eta Bildotsari zor deutsegu salbazinoa».

Zaharretako batek esan eustan: «Horregaitik dagoz Jainkoaren tronu aurrean, gau eta egun hari gurtza emoten bere tenpluan, eta tronuan jesarrita dagoana hareekin biziko da. Ez dira gehiago gose, ez egarri izango, eta ez ditu eguzkiak, ez sargoriak joko, tronuaren erdian dagoan Bildotsak janarituko eta ur biziko iturrietara eroango ditueta. Jainkoak begietako malko guztiak lehortuko deutsez».

Jaunak esana.

**2**

*Ez da gehiago heriotzarik izango.*

Apokalipsia liburutik *Ap* 21, 1a. 3-5a

NIK, Joanek, zeru barria eta lur barria ikusi nebazan, eta ahots handia entzun neban tronutik esaten: «Hona Jainkoaren bizilekua gizakien artean; hareekin biziko da. Hareek izango ditu bere herri, eta Jainkoa bera izango dabe hareek beragaz.

Begietako malkoak lehortuko deutsez, eta ez da gehiago heriotzarik izango, ez dolurik, ez negarrik, ez nekerik, lehengo mundua desagertu da-eta».

Eta tronuan jesarrita egoanak esan eban: «Hara, gauza guztiak barri egiten ditut».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoak

**1**

*Sal* 23 [22], 1-3. 4. 5. 6 (R/. 1)

R/. **Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean.**

V/. Jauna dot artzain, ez naz ezeren beharrean;
larre gurietan etzunarazoten nau,
ur-bazter nasaira eroaten
eta indarrak deustaz barritzen;
bide segurutik naroa,
bere izenari ohore eginez. R/.

V/. Ibar baltz ilunean banabil be,
ez naz gatxaren bildur,
Zu nigaz zagoz-eta;
zure artzain-makilak nasaitzen nau. R/.

V/. Mahaia atontzen deustazu

arerioen begi-bistan;
orioz igurzten deustazu burua,
gainezka dot edontzia. R/.



V/. Zoriona eta maitasuna ditut lagun,
bizitzako egun guztietan,
eta Jaunaren etxean biziko naz
amaibako egunetan. R/.

## 2

*Sal* 25 [24], 4-5b. 6 eta 7cd. 20-21 (R/. 1)

R/. **Jauna, Zugana jasotzen dot gogoa.**

V/. Azaldu niri, Jauna, zeure bideak,
erakutsi zeure bidezidorrak.
Gidatu nagizu zeure leialtasunean, eta irakatsi,
Zeu zara-eta nire Jainko salbatzailea. R/.

V/. Izan gogoan, Jauna, zeure errukia eta maitasuna:
betidanikoak dira-eta.
Gogoratu nitaz zeure maitasunean,
zeure ontasunari dagokionez, Jauna. R/.

V/. Gorde nagizu bizirik eta libratu,
ez nadila lotsatu, Zugan babesteagaitik.
Prestutasunak eta zuzentasunak zainduko nabe,
Zugan dot-eta itxaroten. R/.

## 3

*Sal* 42 [41], 2. 3. 5abc; 43 [42], 3. 4 (R/. *Sal* 42 [41], 3a)

R/. **Jainko biziaren egarri naz.**

V/. Basahuntza gogo biziz uretara lez,
halantxe nire gogoa, ene Jainko, Zugana. R/.

V/. Jainkoaren egarri naz, Jainko biziaren egarri:

noiz helduko ete naz Jainkoaren aurpegia ikustera? R/.

V/. Bihotza urtzen jat barruan, gogora ekarriz
zelan joaten nintzan tenplura, Jainkoaren etxera,
poz-oihuz eta goraka, jai-giroan. R/.

V/. Bialdu zeure argia eta egia, gidatu nagiela,
eta eroan zure mendi santura, zure bizilekura. R/.

V/. Eta helduko naz Jainkoaren altarara,
neure poz betea dodan Jainkoagana.
Zitaraz goratuko zaitut, Jainkoa, ene Jainkoa. R/.

V/. Zergatik zagoz, nire barrua, lur jota?
Zergatik ezin egonik?
Itxaron Jainkoagan.
Goretsiko dot, barriz ere,
neure Salbatzailea eta Jainkoa. R/.

## 4

*Sal* 148, 1-2. 11-13. 14 (R/. ik. 13a)

R/. **Goratu egizue Jaunaren izena.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Goratu egizue Jauna zerutik,
goretsi zeru-goienetik.
Goratu egizue, haren aingeru guztiok,
goretsi, haren gudari-talde guztiok. R/.

V/. Goratu egizue, munduko errege eta herri guztiok,
buruzagi eta munduko gobernari guztiok;
mutil eta neska, agure eta umeok.
Goretsi begie Jaunaren izena,
izen goren bakarra;
haren ospea zeru-lurren gainetik garai. R/.

V/. Garaipena emoten deutso bere herriari;
gorespena zor deutsoe fededun guztiek,
gorespena Israelek, bere-berea dauan herriak. R/.

## II. IRAKURGAIAK ITUN BARRITIK

### 1

*Sinisten dogu, haregaz biziko garala.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 6, 3-4. 8-9

SENIDEOK: Bateoaz Kristo Jesusegaz bat egin dogunok, haren heriotzagaz egin dogu bat. Bateoaren bitartez haregaz heriotzan hobiratuak izan gara, Aitaren aintzaz Kristo hilen artetik biztu zan lez, guk be bizi barria bizi dagigun.

Beraz, Kristogaz hil bagara, sinisten dogu, bizi be haregaz biziko garala. Badakigu Kristo, hilen artetik biztuta gero, ez dana barriro hilko: heriotzak ez dau gehiago aginterik harengan.

Jaunak esana.

### 2

*Nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.*

San Paulo Apostoluak Erromatarrei egindako epistolatik *Erm* 14, 7-9

SENIDEOK: Gutariko inor ez da beretzat bizi, ezta beretzat hiltzen be. Bizi bagara, Jaunarentzat gara bizi, eta hiltzen bagara, Jaunarentzat gara hiltzen. Beraz, nahiz bizi nahiz hil, Jaunarenak gara.

Honetarako hil eta biztu zan Kristo: hildakoen eta bizien Jauna izateko.

Jaunak esana.

## 3

*Kristogaz daben alkartasunagaitik*
*guztiak bihurtuko dira bizira.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako lehenengo epistolatik *1 Ko* 15, 20-23

SENIDEOK: Biztu da Kristo hilen artetik, heriotzatik biztuko diranetan lehen-frutu. Izan be, heriotza gizon baten bidez etorri zan lez, gizon baten bidez etorri da hildakoen biztuera be. Eta Adamegaz daben alkartasunagaitik gizaki guztiak hiltzen diran lez, Kristogaz daben alkartasunagaitik guztiak bihurtuko dira bizira. Baina bakotxa bere sasoian: lehenengo Kristo, lehen-frutua danez; gero, Kristorenak, hau barriro etortzean.

Jaunak esana.

## 4

*Kristogan aukeratu ginduzan Jainkoak,*
*mundua sortu baino lehen,*
*santu eta errubako izan gaitezan.*

San Paulo Apostoluak Efesoarrei egindako epistolatik *Ef* 1, 3-5

BEDEINKATUA izan bedi Jainkoa, Jesu Kristo gure Jaunaren Aita,

zeruan, Kristoren bitartez,

Espirituaren era guztietako ondasunez bedeinkatu gaituana!

Kristogan aukeratu ginduzan,

mundua sortu baino lehen,

santu eta errubako izan gaitezan beraren aurrean, maitasunez.

Bere onginahiak eraginda aurrez eukan erabagita,

Jesu Kristoren bitartez gu seme-alabatzat hartzea.

Jaunak esana.

**5**

*Jainkoak beragaz hartuko gaitu.*

San Paulo Apostoluak Tesalonikarrei egindako lehenengo epistolatik *1 Ts* 4, 13-14. 18

SENIDEOK: Ez dogu nahi hildakoen zoriaz zuek ezjakinean egoterik, atsekabetu ez zaitezen, itxaropenik ez dabenen antzera. Jesus hil eta biztu zala egiaz sinisten badogu, Jesusegaz bat eginik hil diranak be Jainkoak beragaz hartuko ditu. Adoretu egizue, beraz, alkar berba honeekin.

Jaunak esana.

## Aleluia eta Ebanjelio aurreko txatalak

**1**

Ik. *Mt* 11, 25

(R/. **Aleluia.**)

V/. Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna,
erreinuari buruzko Barri Ona
jente apalari agertu deutsazulako. (R/.)

**2**

*Jn* 6, 39

(R/. **Aleluia.**)

V/. Hau da bialdu nauan Aitaren nahia:

berak emon deustazan guztietatik
ez dagidala bat be galdu,
ezpada ze, biztu dagidazala azken egunean, dino Jaunak. (R/.)

**3**

*2 Ko* 1, 3b-4a

(R/. **Aleluia.**)

V/. Bedeinkatua Jainkoa,
Aita errukitsu
eta kontsolamentu guztien iturri dan Jainkoa!
Harek emoten deusku adore atsekabe guztietan. (R/.)

# EBANJELIOAK

## 1

*Gauza honeek jakintsuei gorde*
*eta jente apalari agertu deutsazuz.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik *Mt* 11, 25-30

ALDI haretan, Jesusek esan eban: «Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna, gauza honeek jakintsuei eta burutsuei gorde eta jente txikiari agertu deutsazuzalako. Bai, Aita, halan izan dozu gogoko. Nire Aitak dana emon deust, eta ez dau inork Semea ezagutzen, Aitak baino; ezta Aita be, Semeak baino, eta Semeak agertu gura deutsonak baino.

Zatoze Neugana nekatu eta lanpetu guztiok, eta Neuk arinduko zaituet. Hartu egizue nire buztarria eta ikasi Neugandik, ze gozoa eta bihotz-apala naz, eta aurkituko dozue zeuen arimentzako atsedena. Izan be, Nire buztarria leuna da, eta nire zama arina».

Jaunak esana.

## 2

Ebanjelio hau era laburrean ik. honen ondoren.

*Hauxe da nire Aitaren nahia:*
*berak emon deustazan guztietatik, ez dagidala bat be galdu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 6, 37-40

ALDI haretan, esan eutson Jesusek jenteari: Aitak Niri emoten deustan guztia Neugana etorriko da, eta Nigana etortzen danik ez dot kanpora botako, ze, ez naz zerutik jatsi neure nahia egitera, bialdu nauanaren nahia baino.

Eta hauxe da bialdu nauanaren nahia: berak emon deustan guztitik, ez dagidala ezer be galdu, ezpada ze,

biztu dagidala azken egunean. Hauxe da nire Aitaren nahia: Semea ikusi eta harengan sinisten dauanak izan dagiala betiko bizitza; eta Neuk biztuko dot azken egunean».

Jaunak esana.

---

Ebanjelioa era laburrean:

*Hauxe da nire Aitaren nahia:*
*berak emon deustazan guztietatik, ez dagidala bat be galdu.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 6, 37-39

ALDI haretan, esan eutson Jesusek jenteari: Aitak Niri emoten deustan guztia Neugana etorriko da, eta Nigana etortzen danik ez dot kanpora botako, ze, ez naz zerutik jatsi neure nahia egitera, bialdu nauanaren nahia baino. Eta hauxe da bialdu nauanaren nahia: berak emon deustan guztitik, ez dagidala ezer be galdu, ezpada ze, biztu dagidala azken egunean.

Jaunak esana.

---

**3**

(Eukaristian parte hartu izan dauan umearentzat)

*Ogi honetatik jaten dauana betiko biziko da,*
*eta Neuk biztuko dot azken egunean.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 6, 51-58

ALDI haretan, esan eutson Jesusek jenteari: Neu naz zerutik jatsia dan ogi bizia; ogi honetatik jaten dauana betiko biziko da. Eta Nik emongo dodan ogia neure haragia da, mundua bizi dadin emona». Judeguek eztabaidan ziharduen euren artean: «Zelan emon ahal deusku honek bere haragia jaten?»

Jesusek esan eutsen: «Bene-benetan dinotsuet:

Gizonaren Semearen haragia jaten eta haren odola edaten ez badozue, ez dozue bizirik izango zeuongan. Nire haragia jaten eta nire odola edaten dauanak betiko bizitza dauka, eta Neuk biztuko dot hori azken egunean. Izan be, nire haragia benetako janaria da eta nire odola benetako edaria. Nire haragia jaten eta nire odola edaten dauana Neugan dago eta Ni harengan.

Bizia dan Aitak bialdu nau eta Ni Aitari esker bizi naz; era berean, Ni jaten nauana Neuri esker biziko da. Hauxe da zerutik jatsi dan ogia; ez da zuen gurasoek jan ebena lakoa, ze, hareek hil egin ziran. Ogi honetatik jaten dauana betiko biziko da».

Jaunak esana.

## 4

*Sinisten badozu,*
*Jainkoaren aintza ikusiko dozu.*

 Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 11, 32-38. 40

ALDI haretan, Lazaroren arreba Mariak, Jesus egoan lekura heltzean, ikusi ebanerako, oinetara ahuspez jausi eta esan eutson: «Jauna, hemen izan bazina, gure nebea ez zan hilko».

Maria eta Mariagaz etorritako judeguak negarrez ikusirik, barruak dar-dar egin eutson Jesusi eta, guztiz bihozminduta, itaundu eban: «Non ipini dozue?» Erantzun eutsoen: «Jauna, zatoz eta ikusi». Jesusek negarrari emon eutson.

Han egozan judeguek esan eben: «Begira zelako maitasuna eutson!» Baina hareetariko batzuek esan eben: «Itsuari begiak zabaldu eutsozan honek, ez ete eikean hau hiltzea galazo?»

Jesus, ostera be bihozminduta, hilobira hurreratu zan. Hatx-zuloa zan, harri-losaz estaldua.

Jesusek erantzun eutson: «Ez deutsut esan, ba, sinisten badozu Jainkoaren aintza ikusiko dozula?»

Jaunak esana.

## 5

*Horra hor zeure ama!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 19, 25-30

ALDI haretan, Jesusen kurutzearen ondoan egozan haren ama, bere amaren ahizta, Maria Kleofasena eta Maria Magdalena. Jesusek, bere ama eta, beronen ondoan, maite eban ikaslea ikusirik, esan eutson amari: «Emakume, horra hor zure semea!» Gero, ikasleari esan eutson: «Horra hor zure ama!» Eta harrezkero ikasleak bere etxean hartu eban.

Ondoren, Jesusek, dana betea zala jakinik, Liburu Santuak esana guztiz bete zedin, esan eban: «Egarri naz!» Bazan han ozpinez betetako pitxar bat. Orduan, belakia ozpinetan busti eta, kainaberari ertzean erantsiz, ahora hurreratu eutsoen. Ozpina hartu ebanean, Jesusek esan eban: «Bete da dana!»

Eta, burua makurtuz, azken arnasa emon eban.

Jaunak esana.

# B. Oraindino bateatu bako umearen hiletetan

## I. Irakurgaiak Itun Zaharretik

### 1

*Betiko hondatuko dau Jaunak heriotza.*

Isaias Profetaren liburutik *Is* 25, 6a. 7-8b

EGUN haretan, jai-jatordua emongo deutse
Jaun ahalguztidunak mendi honetan herri guztiei.
Mendi honetan kenduko dau
herri guztien gainean zabalduta dagoan estalkia,
nazino guztiak estaltzen dituan oihala.
Betiko hondatuko dau heriotza;
lehortuko ditu Jainko Jaunak aurpegi guztietako negar-malkoak.

Jaunak esana.

### 2

*Ona da Jaunaren salbazinoa isilean itxarotea.*

Negar Kantak liburutik *Nk* 3, 22-26

JAUNAREN onginahia ez da amaitu,
haren errukia ez da agortu;
goizero barritzen da.
Bai handia, Jauna, zure leialtasuna!
Neure artean dinot: «Jauna da nire ondarea,
harengan dot itxaropena».
Ona da Jauna harengan uste on dabenentzat,
haren bila dabiltzanentzat.
Ona da Jaunaren salbazinoa isilean itxarotea.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 25 [24], 4-5b. 6 eta 7cd. 17 eta 20 (R/. 1; edota 3a)

R/. **Jauna, Zugana jasoten dot gogoa.**

Edo: **Ez daitezala lotsatu, Jauna, zugan itxaron dabenak.**

V/. Azaldu niri, Jauna, zeure bideak,
erakutsi zeure bidezidorrak.
Gidatu nagizu zeure leialtasunean, eta irakatsi,
Zeu zara-eta nire Jainko salbatzailea. R/.

V/. Izan gogoan, Jauna, zeure errukia eta maitasuna,
betidanikoak dira-eta.
Gogoratu nitaz zeure maitasunean,
zeure ontasunari dagokionez, Jauna. R/.

V/. Nasaitu nire bihotz larritua,
atara nagizu estutasun honeetatik.
Gorde nagizu bizirik eta libratu,
ez nadila lotsatu, Zugan babesteagaitik. R/.

## Aleluia eta Ebanjelio aurreko txatalak

### 1

*2 Ko* 1, 3b-4a

(R/. **Aleluia.**)

V/. Bedeinkatua Jainkoa,
Aita errukitsu
eta kontsolamentu guztien iturri dan Jainkoa!
Harek emoten deusku adore atsekabe guztietan. (R/.)

### 2

*Ap* 1, 5a. 6b

(R/. **Aleluia.**)

V/. Jesu Kristo da hilen arteko lehenengo biztua;
berari aintza eta agintea gizaldi eta gizaldietan. (R/.)

# EBANJELIOAK

## 1

*Gauza honeek jakitunei gorde*
*eta jente apalari agertu deutsazuz.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik *Mt* 11, 25-30

ALDI haretan, Jesusek esan eban: «Bedeinkatua Zu, Aita, zeru-lurren Jauna, gauza honeek jakintsuei eta burutsuei gorde eta jente txikiari agertu deutsazuzalako. Bai, Aita, halan izan dozu gogoko. Nire Aitak dana emon deust, eta ez dau inork Semea ezagutzen, Aitak baino; ezta Aita be, Semeak baino, eta Semeak agertu gura deutsonak baino.

Zatoze Neugana nekatu eta lanpetu guztiok, eta Neuk arinduko zaituet. Hartu egizue nire buztarria eta ikasi Neugandik, ze gozoa eta bihotz-apala naz, eta aurkituko dozue zeuen arimentzako atsedena. Izan be, Nire buztarria leuna da, eta nire zama arina».

Jaunak esana.

## 2

*Jesusek, deadar handia eginez,*
*azken arnasa emon eban.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Markosen liburutik *Mk* 15, 33-46

EGUERDIAN, ilundu egin eban lurbira osoan hirurak arte. Hiruretan, Jesusek oihu handiz esan eban: «Eloi, Eloi, lema sabaktani», hau da, «Ene Jainko, ene Jainko, zergaitik itzi nozu?»

Hau entzutean, han egozan batzuek esan eben: «Eliasi deika jabilk». Orduan batek, lasterka joan, belakia ozpinetan busti eta, kainabera bati ertzean lotuz, edatera emon eutson, esanez: «Egon, ea datorkion Elias, kurutzetik jaistera». Baina Jesusek, deadar handia eginez, azken

arnasa emon eban.

Orduan, santutegiko oihala erdi-erditik urratu zan, goitik beheraino. Aurrean egoan erromatar ehuntariak, zelan hil zan ikustean, esan eban: «Benetan, Jainkoaren Semea zan gizon hau».

Baziran han andra batzuk be, urrutitik begira; hareen artean, Maria Magdalena, Santiago gaztearen eta Joseren ama Maria, eta Salome; honeek Jesusen ondorik eta haren zerbitzuan ibiliak ziran, Galilean egoala. Baziran beste emakume asko be, Jesusegaz Jerusalemera igon ebenak.

Iluntzean –zapatu-bezpera zan egun ha, Pazko-jairako prestaketa-eguna–, Arimateako Jose Pilatogana joaten ausartu zan, Jesusen gorpua eskatzera. Jose hau kontseilukide ospetsua zan, eta Jainkoaren erreinua noiz helduko zain egoan. Harritu egin zan Pilato Jesus ordurako hilda egoteaz eta, ehuntariari dei eginez, aspaldi hila zan itaundu eutson.

Ehuntariaren argibideak jaso ostean, gorpua eroateko baimena emon eutson Joseri. Honek izara bat erosi eta, Jesus kurutzetik jatsirik, izaran batu eban eta harkaitzean zulatutako hilobian ipini. Gero, harri bat irauliz, hilobiko sarrera itxi egin eban.

Jaunak esana.

## 3

*Horra hor zeure ama!*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Joanen liburutik *Jn* 19, 25-30

ALDI haretan, Jesusen kurutzearen ondoan egozan haren ama, bere amaren ahizta, Maria Kleofasena eta Maria Magdalena. Jesusek, bere ama eta, beronen ondoan, maite eban ikaslea ikusirik, esan eutson amari: «Emakume, horra hor zure semea!» Gero, ikasleari esan eutson: «Horra hor zure ama!» Eta harrezkero ikasleak bere etxean hartu eban.

Ondoren, Jesusek, dana betea zala jakinik, Liburu Santuak esana guztiz bete zedin, esan eban: «Egarri naz!» Bazan han ozpinez betetako pitxar bat. Orduan, belakia ozpinetan busti eta, kainaberari ertzean lotuz, ahora hurreratu eutsoen. Ozpina hartu ebanean, Jesusek esan eban: «Bete da dana!»

Eta, burua makurtuz, azken arnasa emon eban.

Jaunak esana.